

# Antzinako okzitaniera

**Antzinako okzitaniera** (okzitanieraz: *occitan ancian*, katalanez: *occità antic*), **antzinako proventzera** ere deitua, okzitaniar erromantze hizkuntzen aldaera zaharrena izan zen, VIII. mendetik XIV. mendera bitarteko idazkiek erakusten dutenez.[1][2] Antzinako okzitaniera, oro har, okzitaniera goiztiarra eta antzinakoa hartzen ditu bere barnean. "Okzitaniera" hitza moduan 1300. urte inguruan agertu zenez,[3] Erdi Aroko testuetan antzinako okzitanierari "erromantze" (okzitanieraz: *romans*) edo "proventzera" (okzitanieraz: *proensals*) esaten diote.

Erdi Aroan pisu handiko hizkuntza izan zen Euskal Herrian.[4] Pirinioetako hegoaldean Erdi Aroan Nafarroako eta Aragoiko zenbait tokitan mintzatu zen, euskara eta nafar-aragoierarekin batera. Hiztunak Okzitaniatik (Gaskoniatik batez ere) jatorrizko merkatariak eta artisauak ziren, Done Jakueren bidean zeuden hiri berrietan geratu zirenak. Jakan XIII mendeko amaiera edo XIV mendeko hasiera arte mintzatu zen; Lizarran eta Iruñean XVI mendera arte.

**Antzinako okzitaniera**

**Datu orokorrak**

| | |
|---|---|
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | subjektua aditza objektua, hizkuntza azentuala eta hizkuntza fusionatzailea |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-2** | pro |
| **ISO 639-3** | pro |
| **Glottolog** | oldp1253 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/oldp1253) |

## Eduki-taula



## Historia

Okzitanieraren lehen idazkien artean *Tomida femina*, *Boecis* eta *Cançó de Santa Fe* daude. Antzinako okzitaniera, trobadoreek erabiltzen zuten hizkuntza, corpus literarioa zuen lehen hizkuntza erromantzea izan zen, eta Europako beste hizkuntza batzuen poesia lirikoaren garapenean eragin handia izan zuen. Erdiko puntua bere ortografiaren ezaugarri bat izan zen eta gaur egun katalanean eta gaskoian bizi da.

Antzinako katalana eta antzinako okzitaniera XI. eta XIV. mendeen artean elkarrengandik urrundu ziren.[5] Katalana ez zuen inoiz /u/ eta /y/ eta /o/ eta /u/ bereizi (aldaera batzuen enfasirik gabeko silabetan izan ezik) eta, beraz, fonologikoki dibergentzia okzitanieragandik urrundu baino lehen gertatu zen.

# Fonologia

## Kontsonanteak

Antzinako okzitanierazko kontsonanteak

| | Biezpainkaria | Ezpain-horzkaria | Horzkaria/ Hobikaria | Hobiatzekoa/ Sabaikaria | Belarra |
|---|---|---|---|---|---|
| **Sudurkaria** | m | | n | ɲ | |
| **Eztandakaria** | p b | | t d | | k g |
| **Frikaria** | | f v | s z | | |
| **Afrikatua** | | | ts dz | tʃ dʒ | |
| **Albokaria** | | | l | ʎ | |
| **Dardarkari anikoitza** | | | r | | |
| **Dardarkari sinplea** | | | ɾ | | |

## Bokalak

Hona hemen monoptongoak

Antzinako okzitanierazko bokalak

| | Aurrekoa | Atzekoa |
|---|---|---|
| **Itxia** | i y | u |
| **Erdiitxia** | e | (o) |
| **Erdiirekia** | ɛ | ɔ |
| **Irekia** | a | ɑ |

# Adibidea

Hona hemen Bertran de Bornen *Ab joi mou lo vers e·l comens* (c. 1200):

| | |
|---|---|
| Bela Domna·l vostre cors gens<br>E·lh vostre bel olh m'an conquis,<br>E·l doutz esgartz e lo clars vis,<br>E·l vostre bels essenhamens,<br>Que, can be m'en pren esmansa,<br>De beutat no·us trob egansa:<br>La genser etz c'om posc'e·l mon chauzir,<br>O no·i vei clar dels olhs ab que·us remir. | Oi dama ederra, zure grazia guztiak<br>Begirada gozoak eta zure aurpegiaren distirak<br>konkistatu naute<br>Eta orduan, balorazio bat egiten badut<br>zure izaera osoak esan behar du:<br>Ez dut inor hain eder aurkitzen |

| | |
|---|---|
| | Mundu osoan atseginagoa<br>Bestela, ikusten zaitudan begiak<br>leundu egin dira. |

# Erreferentziak


1. ↑ Posner, Rebecca. (1996). *The Romance Languages.* Cambridge University Press ISBN 0-521-28139-3.
2. ↑ Chambers, Frank M.. (1985). *An Introduction to Old Provençal Versification.* Diane ISBN 0-87169-167-1.
3. ↑ Smith & Bergin. *Old Provençal Primer.* , 2 or..
4. ↑ Intxausti, Joseba. *IV. Euskara Erdi Aroan.* (https://www.euskadi.eus/contenidos/informacion/argitalpenak/es_6092/adjuntos/EEH/EUSKARA/EHH4.PDF) in: *Euskara, euskaldunon hizkuntza*., 8 or..
5. ↑ Riquer, Martín de. (1964). *Història de la Literatura Catalana.* **1** Bartzelona: Edicions Ariel.


# Bibliografia


- Jensen, Frede. (2015). *The Syntax of Medieval Occitan.* in: *Beihefte zur Zeitschrift für romanische Philologie*. (2. argitaraldia) De Gruyter ISBN 978-3-484-52208-4.
- Paden, William D.. (1998). *An Introduction to Old Occitan.* Modern Language Association of America ISBN 0-87352-293-1.
- Romieu, Maurice; Bianchi, André. (2002). *Iniciacion a l'occitan ancian / Initiation à l'ancien occitan.* Pessac: Presses Universitaires de Bordeaux ISBN 2-86781-275-5.
- Skårup, Povl. (1997). *Morphologie élémentaire de l'ancien occitan.* Museum Tusculanum Press ISBN 87-7289-428-8.
- Smith, Nathaniel B.; Bergin, Thomas Goddard. (1984). *An Old Provençal Primer.* Garland ISBN 0-8240-9030-6.


# Kanpo estekak

| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q2779185 |
|---|---|

